**Kepa Etxebarria Sagarzazu**
1975
Donostia



1999. urtean atxilotu eta espetxeratu zuten.

Egungo destinoa:
Centro Penitenciario A Lama
Monte Racelo, s/n
36.830. A Lama
(Pontevedra)

Ainhoa, maitia,...
orain kalean bagina...
elkartuta jai giroan,
une batez imajina.
Ez etsi, amona, iristear da
askatasuna, jakina!!
Ezpain eztiez laztanduko duk
gorria den krabelina.

Maitasunez, zure aitona Kepa.

Bazen behin Ainhoa
izeneko neska
bihurri bat eta
baserri batean bizi
zen bere gurasoekin
batera.



Inguruko basoetan
Ximon izeneko azeri
bat bizi zen ere.
Gauero inguruko
baserrietan sartzen zen
biztanle guztiak lotan
zeudela aprobetxatuz
eta aurkitzen zituen
abere gehienak
bahitzeko.



Ainhoak ondotxo ezagutzen zituen Ximonen gaiztakeriak, horrexegatik gauero leihoan orduak ematen zituen Ximonek bertako abereak lapurtu ez zitzan baina gehienetan...loak hartzen zuen.



Ximoni ez zitzaion
Ainhoaren jarrera
gustatzen, horregatik
Ainhoa bera ere
bahitzea erabaki zuen.

Behin Ximonen kubazuloan:

– Gaur gauean arkumea afaltzea pentsatuta nuen baina...zu jango zaitut.– esan zion Ximonek Ainhoari.

– A bai? Ba pena haundia ematen dit, ze gauerako patata tortila bat prestatzeko asmoa bait nuen baina...

– Patata tortila, zer da hori?– galdetu zion azeriak bere barneko jakin-nahiak piztuaz.

– Gizakiok jaten dugun jaki goxo bat.– erantzun zion Ainhoak.



Ximonek ez zuen patata tortila dastatu gabe geratu nahi, horregatik bere hasierako asmo guztiak alde batera utzi eta Ainhoari patata tortila prestatzea utzi zion.

Txudituta geratu zen Ximon patata tortilarekin. Bere bizitza osoan ez zuen horrelakorik dastatu, horregatik eta zapore berriak dastatu nahi zituelako, ideia berri bat bururatu zitzaion.





Ainhoa, pentsatzen aritu naiz eta... momentuz ez zaitut jango, baina horren trukez, gizakiok jaten dituzuen jaki goxo horietakoak prestatuko dizkidazu, zer deritzozu?

Eta halaxe izan zen. Ondorengo egunetan Ainhoak milioika jaki ezberdin prestatu zituen, guztiak Ximonen goxamenerako: kroketak, arrain zopa, legatza saltsan, lekak, porrusalda, arroza, babarrunak, marmitakoa eta abar.



Ainhoak ordea bere baserria eta gurasoak botatzen zituen faltan eta Ximonen berekiko jarrera asko aldatu zen, beraz une ezin hobea zela pentsatu zuen Ximoneri bere eskaera egiteko: Zera...ni neu ere pentsatzen aritu naiz eta... zer deritzozu nire baserrira bizitzera etorriko bazina?- Proposatu zion Ximoni.

Berehala adostasun batera heldu ziren eta azeri gosetia Ainhoaren baserrira bizitzera joan zen. Aurrerantzean ez zituen bertako abere gehiago lapurtuko eta, horren trukez, Ainhoak prestaturiko jakiak dastatzen jarraituko zuen.



Gaur egun oraindik
guztiak elkarrekin
bizi dira eta zoriontsu
bizi direla esaten dute.

# AZERI GOSETIA

Bazen behin,
Ainhoa izeneko
neska bihurri bat,
baserri batetan
bizi zena bere
gurasoekin batera.



Inguruko basoetan ere
Ximon izeneko azeri
bat bizi zen.
Gauero inguruko
baserrietan sartzen zen,
guztiak lotan zeu_
dela aprobetxatuz,
aurkitzen zituen abere
gehienak bahitzeko.



Ainhoak ondotxo
ezagutzen zituen
Ximonen gaizta_
keriak, horrexegai_
tik gauero leihoan
orduak ematen
zituen Ximonek
bertako abereak
lapurtu ez zedin
baina gehienetan ... Loak hartzen zuen




Ximoni ez zitzaion
Ainhoaren jarrera
gustatzen, horregaitik
Ainhoa bera ere
bahitzea erabaki
zuen.



Ximonen kobazuloan:
X- Gaur gauean arkumea
ajaltzea pentsatuta nuen
baina... zu jango zaitut
A- A bai? Ba pena
haundia ematen
dit, ze gauerako
patata tortila
bat prestatzeko as_
moa nuen, baina...
X- Zer da hori?
A- Gizakiok jaten dugun jaki goxo bat.



Ximonek ez zuen patata
tortila dastatu gabe
geratu nahi, horregatik
bere hasierako asmo
guztiak alde batera-
ra utzi eta Ainhoari
patata tortila pres-
tatzea utzi zion.



Ximon txundituta
geratu zen patata
tortilarekin. Ez zuen
bere bizitza osoan
horrelakorik dasta-
tu, horregatik eta
zapore berriak
dastatu nahi
zituelako, idei
berri bat buru-
ratu zitzaion.



X- Ainhoa, pentsatzen
ari naiz eta...
Momentuz ez zaitut
jango, baina horren
truke, gizakiok jaten
dituzuen jaki goxo
horietakoak presta-
tuko dizkidazu, zer
deritzozu?



Eta halaxe izan zen,
ondorengo egunetan
Ainhoak milioika jaki
ezberdin prestatu zi-
tuen, guztiak Ximo-
nen gozamenerako.
Kroketak, arrain zopa,
legatza saltsan, tekak,
porrusalda, arroza,
babarrunak, marmitakoa...



Ainhoak ordea bere baserria
eta gurasoak botatzen zituen faltan.
Ximonen jarrera ere
berekiko asko aldatu
zen, beraz une ezino-
bea zela pentsatu
zuen, zera...
A- Ximon, ni neu ere
bai pentsatzen ari
naiz eta... Zer
deritzozu nere
baserrira bizitzera etorriko bazina?



Berehala adostasun batetara heldu
ziren eta azeri gosetia Ainhoaren
baserrira bizitzera joan zen.
Baserrian biziaz ez zituen
bertako abere gehiago lapurtu
eta horren truke Ainhoak
prestatutiko jakiak dasta-
tzen jarraitu zuen.
Gaur egun oraindikan
guztiak elkarrekin
eta zoriontsu bizi
direla esaten
dute.



